



Lagun hori:

Laster, Koldo Mitxelena Kulturuneak eraberritze partzial, ezinbesteko eta atzeraezin bati ekingo dio, azken hogeita hamar urteetan egin duen bezala zerbitzuak ematen jarraitu ahal izateko. Hori dela eta, ekainaren 16tik aurrera –eta obrek iraungo duten 21 hilabete bitartean- ateak itxi eta beste gune batzuetara lekualdatuko gara, baina zuri arreta ematen jarraituko dugu.

Aldaketa guztiek deserosotasunen bat sortzen dute. Zerbitzu gehienak mantendu arren, beste batzuk bertan behera utzi beharko ditugu aldi baterako. Baina zerbitzu nagusiak ematen jarraituko dugu. Izan ere, KMK ez da ekipamendu bat soilik, KMK espazioak eta zerbitzuak erabiltzen dituzten eta kulturarekiko maitasuna partekatzen duten pertsonen komunitatea da. Eta zu zara komunitate kultural horretako kide, KMK berezko zerbait bezala sentitzen duena. Gugan konfiantza izaten jarraitzea nahi dugu. Horretarako, zugandik hurbil egoteko, ahalegina egin dugu gure kultur eskaintza eskura izan dezazun.

Liburutegiak 80.000 dokumentu baino gehiago mailegatu zituen iaz. Irakurketaz, bideoez edo musikaz gozatzen duen pertsonetako bat bazara, **mailegu zerbitzuaren kokaleku berrian gozatzen jarraitu ahal izango duzu, Errege-erregina Katolikoen kaleko 16. zenbakian, KMKren eraikinetik oso hurbil.** Kalean bertan eta betiko ordutegi berarekin. Funtsak lekuz aldatzeko aste batzuetan itxita eduki ondoren, uztailaren amaieran zerbitzuaz gozatzen jarraitu ahal izango duzu.

Eta Liburutegiaren funts historikoa kontsultatu behar baduzu, Gipuzkoako Probintziako Artxibo Historikoan egin dezakezu, Oñatin. Bertan, abuztutik aurrera, dokumentu horiek guztiak gordeko dira, KMKra itzuli arte.

Kultura jardueren Areto nagusiak 150 ekitaldi eta eztabaida baino gehiago programatu ditu 2022an. Gure kultur programaziora joatea gustukoa baduzu, **Santa Teresa komentuko areto berrira etortzera gonbidatzen zaitugu, Donostiako Alde Zaharrean, Elbira Zipitria kaleko 1. zenbakian.** Bertan, ekainaren 19tik aurrera zure zain egongo gara.

Ikus dezakezunez, ez zaitugu begien bistatik galdu nahi, ezta zuk gu ere. KMKko talde osoak zure konfiantza eskertzen du, eta zure esanetara jarraitzeko gogoa helarazi nahi dizu.

kminformazioa@gipuzkoa.eus
kmk.gipuzkoa.eus/obrak

Donostia, 2023-06-05

Sin.: Patxi Presa Lastra
Liburutegi eta Sustapen eta Hedapen Zerbitzuburua





Estimado/a amigo/a

En breve, Koldo Mitxelena Kulturunea inicia un proceso de obras para acometer una reforma parcial imprescindible e inaplazable y poder así seguir prestando sus servicios como lo ha hecho durante los últimos treinta años. Por este motivo, a partir del día 16 de junio, cerramos las puertas y nos trasladamos a nuevos espacios donde –durante los 21 meses que durarán las obras— seguiremos atendiéndote.

Todos los cambios generan alguna incomodidad. A pesar de mantener la mayoría de los servicios, tendremos que prescindir temporalmente de otros. Pero los principales continuarán estando a tu disposición. Porque KMK no es solo un equipamiento; KMK es la comunidad de personas que utilizan sus espacios y sus servicios y que comparten su amor por la cultura. Una comunidad cultural de la que formas parte y que siente KMK como algo propio. Queremos que sigas confiando en nosotros y nosotras. Para ello, para seguir teniéndote cerca, hemos hecho un esfuerzo a fin de que nuestra oferta cultural siga a tu disposición.

La Biblioteca ha prestado durante el pasado año más de 80.000 documentos. Si eres una de las personas que disfruta de la lectura, los videos o la música, **podrás seguir haciéndolo en la nueva ubicación del servicio de préstamo en la calle Reyes Católicos 16, muy cerca, justo al lado del edificio de KMK**. A pie de calle y con el mismo horario de siempre. Tras unas semanas de cierre para el traslado de los fondos, a finales de julio podrás seguir disfrutando del servicio.

Y si tienes necesidad de consultar el fondo histórico de la Biblioteca, podrás hacerlo en el Archivo Histórico Provincial de Gipuzkoa, en Oñati, donde, a partir de agosto, se conservarán todos estos documentos hasta que puedan volver a KMK.

La sala de actividades culturales ha programado durante 2022 más de 150 eventos y debates. Si te gusta asistir a nuestra programación cultural, **te invitamos a nuestra nueva sala en el Convento de Santa Teresa, en plena Parte Vieja donostiarra, en la calle Elbira Zipitria 1,** donde te esperamos a partir del 19 de junio.

Como ves, no queremos perderte de vista, ni que tú nos pierdas de vista a nosotras y nosotros. Todo el equipo de KMK agradece tu confianza y quiere transmitirte las ganas de seguir estando a tu disposición.

kminformazioa@gipuzkoa.eus
kmk.gipuzkoa.eus/obrak

Donostia / San Sebastián, 05-06-2023

Fdo: Patxi Presa Lastra
Jefe del Servicio de Biblioteca y Promoción y Difusión Cultural